# ABENDUALDIKO II. DOMEKEA "C"

## Sarrera oharra

Senideok: ondo etorri. Abendualdi honetan urrats bat gehiago emongo dogu. 2. domeka honetan Profetearen irudia agertzen jaku indar handiz. Profetea, egunerokotasuna sakontasunez bizi dauana da. Hortixik egiten dauz bere iragarpenak eta deiak.

Bizi dogun izurrite aldi eta egoera kezkagarri honetan, era askotako iragarpenak eta oihuak zabaltzen jakuzan aldiotan, ez ete doguz benetako profetak behar? Ez ete dogu benetako profeta izan behar? Lagundu deigula liturgia honek sakontasunean murgiltzen gaurko profeta izateko.

## Sarrera abestia

♩= 60
ZATOZ, JAUNA
J.J. Arregui
Za - toz, Jau - na, gaur zai du - zu mun- du - a. Zo - ri gai - tzez, hain
da hon - da - tu - a. Za - toz, Jau - na! Za - bal, o - toi, ze - ru -
a: E - tor be - di zu - re e - rrei - nu - a.

Zatoz, Jauna! Hor gabiltza gauez gau:
Biztu gugan fedearen sua.
Zatoz, Jauna! Argitu zeuk mundu hau:
Etor bedi zure erreinua!

Zatoz, Jauna! Maitasunez gu bete:
jendeek elkar ezin hartu dute.
Zatoz, Jauna! Zuk bat egin mundua:
Etor bedi zure erreinua!

**Damu-otoitza** (*Beherago, Abenduko Koroia*)

Ziztu bizian bizi garanok ez daukagu sakontzeko astirik, ezin dogu sakontasunez bizi gure egunerokoa; ezin izan geintekez gaurko profeta. Jainkoaren errukiak zuzendu gaizala:

—Jesus Jauna, Aitagaz bat eginda bi**zi** izan zinana, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna, Ba**rri** On zaituguna, *Kristo, erruki*.

—Jesus Jauna, Barri On bi**hur**tzen gaituzuna, *erruki, Jauna*.

**Abenduko koroia** (egiten ez bada, gorago *damu-otoitza*)

Bigarren kandela hau bizterakoan, Jauna, barri on izateko gure gogoa biztu daizula eskatzen deutsugu; gure gizarte honek behar dauzan gaurko profetak sustatu daizuzala gure artean.

(2. k*andelea bizten dan bitartean, abestu:*)

♩= 100 Abenduko koroioa bedeinkatzean: Is 60,1 Udaia'97

Ja - gi zai - tez, Je - ru - sa - lem, ba - da - tor zu - re ar - gi - a;
hor do- zu ar - gi-tzen, su ta gar, Jau- na-ren ain- tza.

En - tzun, e - ne he - rri, zu - re - tza - ko do-dan hi -
E - ten lo - ka - rri - ak, ba - rri txa-rrak al - bo - ra -
tza: as - ka - tu - ko zai - tut, poz - tu - ko deu - tsut bi - ho - tza.
tuz, po - bre - tu guz- ti - ei zu - re bi - ho - tza za - bal- duz.

† Itxaropenaren Jainkoak bere Semearen mahai

ingurura ekarri gaitu. Egun baten aintzazko mahai ederrean alkartu gaizala, zorionaren betetasunean.
— AMEN.
(*Ez dago AINTZArik*)

**Ba 5, 1-9**

Bat egoera txarrean aurkitzen danean, entzungor egiten deutse berba adore-emoileei ere, burumakur eta inora begiratzen ez dauala. Halan ere, jakin daigula Jainkoak ez gaitula bertan behera izten, eta guretzat onena dala.

**Sal 126 [125]**

ABN02C Sal 125
Udaia'21
Gu-gaz han-di-ki-ro jo-ka-tu dau Jau-nak. Hau da po-za dau-ka-gu-na!

Jainkoaren benetako esperientzia dauanak, harentzako goralpenak baino ez daukaz, eta beste guztiekaz gura dau goralpenok abestu. Egin daigun horixe, otoizgiroan.

**Flp 1, 4-6. 8-11**

Hauxe da Salbatzaileari benetako harrerea egitea: haregaz lotu ezkero, senide guztiekaz loturik suertatzen gara. Ikusi daigun hori apostoluaren bizitzan.

**Lk 3, 1-6**

Lukas ebanjelariak aldi eta toki baten lekutzen dau Jainkoak bere Herriari egindako ikustaldia.

Bidea prestatu behar jako gurean sartu barik aurrera egin ez daian. Aleluia abestuz egin deiogun harrerea.

**ABENDUALDIRAKO**

Aleluia: Urratu eizue (G.J. 8/41)

R./ A- le- lu - - ia. A- le- lu- - - ia. A- le- lu- - ia.

V/. Ur- ra- tu ei- zu- e bi- de- a Jau- na-ren- tzat, zu- zen- du ha- ren bi- dex- kak: e- ta i- ku- si- ko da- be guz- ti- ek Jaun- goi- ko- a- ren sal- ba- me- na.

## Herri-otoitza

† Guzurmendi honetan egiaren profetak behar ditugula autortuta, jo daigun eskarietara:

—Eleizearen alde: Izurrite aldi honetan sufritzen dagozanen ondoan egonez, Barri On suertatu daiten, bere itxaropenezko berbeaz, *eskatu deiogun Jaunari*.

(edo:

**ABENDUKO EKARIETAN**

Udaia'21

V/. Es - ka - tzen deu - tsu-gu, Jau - na. R/. ZA -TOZ, E - TA SAL- BAU GAI - ZUZ

—Ugari diran sasi-profeta guzurtien artean, itxaropenari bideak erraztea eta zuzentzea iragarriko deuskuen egiazko profetak sortu daitezan, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Gaisoen ondoan euren bizitzea arriskuan jarriz diharduenek esker ona jaso daien, eta hareen eskeintzak arauak betetera eroan gaiezan, *eskatu deiogun Jaunari*.

—…/… (*aukerako eskariren bat*)

—Gure norkeriak eta arinkeriak bidean oztopo dira. Kentzen ahalegindu gaitezan badatorrenari bidea errazteko, *eskatu deiogun Jaunari*.

† Gure otoitz apalak entzuten dozuzan Jainkoa: emoiguzu uste ona alkarren ona baino bilatu ez daigun. Jesu Kristo…

**Jaunartzerako**

**Zatoz, Jauna, zatoz lurrera** zure herri hau salbatzera.

1 *Bakea ta justizia bialdu mundura, Jauna;*
*zure jaiotzak gugana bekar poza, zoriona.*
2 *Okerretatik zuzendu, gaitz bideetatik aldendu,*
*gure kateak apurtu (urratu), bide ilunak argitu.*
3 *Gorroto-bideetatik aldendu gagizuz, Jauna;*
*alkar parkatu dagigun emoiguzu maitasuna.*

**Amaieran**

Danen onerako bakotxak ere zeozer egin behar dogu izurrite aldi hau ahalik eta laburrena izan daiten. Otoitzean bilatu daigun aste honetan bidetik ze oztopo kendu geiken eta zer zuzendu danon osasun-egoereak argi egin daian.

**DATORREN EGUASTENEAN SORTZEZ GARBIAREN JAIA**

Seminarioaren eguna ospatzen dogu gure Eleizbarrutian

Eskabidea Seminarioaren aldekoa izango da